# Auzolanaren kultura
## Iraganaren ondarea, orainaren lanabesa, etorkizunaren giltza



Jasone Mitxeltorena

# AUZOLANAREN KULTURA

## Iraganaren ondarea, orainaren lanabesa, etorkizunaren giltza

*Auzolana, iraganaren ondarea; kolektibitatean antolatutako antzinako bizimoduaren lekuko bizi gisa gure egunetaraino iritsirik, altxorra baita. Hala ere, orainean erabilgarri den heinean izanen da baliozko altxorra, eta, beraz, har dezagun auzolana lanabes. Hala egin dute hainbat ekimenen bultzatzaileek gure egun hauetan, auzolana etorkizunaren giltza dela ulertuta; tunel ilunetan barrena zailtasunez joan beharrean, har dezagun bide argitsuari atea irekiko dion giltza. Auzolana, etorkizunaren gakoa.*

ESKERRAK

**Anjel Rekalde** eta **Gabriel Valin**, egitasmo honen proposamena helarazi eta emandako laguntzarengatik, eta baita **Antxon Mendizabal** ere, egitasmo honen bultzatzaile izateagatik;
**Mikel Sorauren** eta **Humberto Astibia**, liburu honetan jaso diren gaien ildoa jorratzeko berebizikoa izan baita zuen ekarpena; Humberto, zuri bereziki, moldatzeko lana hartzeagatik.

**Jose Mari Esparza**, hemen jaso ditugun hainbat informazio helarazteagatik;
**«Beltza»** eta **Leticia Galeano**, euren herri diren Txile eta Paraguaiko *auzolanen* berri guregana ekartzeagatik;
**Aida** eta **Kepa Fdz. Larrinoa**, auzolanaren gizartea ezagutzeko modua non bilatu adieraztegatik;
**Patxiku Irisarri**, **Xabier Torres** eta **Aritz Otxandiano**, hurrenez hurren Etxalarko, Elizondoko eta Otxandioko alkateak, zuen herrietako berri emateko arreta eskaini diguzuelako.

**Pello Apezetxea**, Etxalarko berri ematen duen liburu zoragarria osatu eta guztion esku jartzeko lanaz gainera, lan honetarako hainbat gogoeta eskaintzeagatik;
**Irune** eta **Itsaso Elizagoien**, Baztan-Bidasoaldeko *Ttipi-ttapa* aldizkariaren Etxalarko berriemaileak, zuen argazkiak liburu honetan erabiltzea uzteagatik;
**Edurne Elizagoien** eta **Maite Irisarri**, *Etxalarko xoko eta jendeak* liburuan bildutako hainbat irudi helaraztegatik. Horiekin batean, irudien jabe diren familiei, baimena emateagatik.

TEDER elkarteko **Jose Luis Echavarri**, Lizarraldeko auzolanaren eta Auzolan sariaren berri emateagatik, eta **Pedro San Emeterio**rekin harremanetan jartzeagatik; zuri, Pedro, zuen herriko egitasmo erraldoi eta zoragarria ezagutarazteagatik;

Hernaniko **Haizea**, lan honetan baliagarri izan diren zenbait gogoeta argigarri eskaintzeagatik;
**Julio Villanueva**, gogoeta interesgarriez gainera, esperientzia baten xehetasunak ezagutarazteagatik;
**JosAnton Artze**, liburu honetan jaso ditugun olerki hunkigarri eta zirraragarriak gure esku jartzeaz gainera, zurekin izandako mintzaldi aberasgarriengatik;
**Juan Antonio Urbeltz**, zure lanaren bidez euskal herri-kultura berraurkitzeko aukera eskaintzeaz gainera, horiek gure lan honetan jaso ahal izateko eskaini diguzun arretarengatik; eta zure seme Mikeli, lan hau hobetzeko pista argigarriengatik;
**Lucio Tabar**, Iruñeko *Bira beste aldera* egitasmoaren berri emateagatik;
EHNE Nafarroako **Mikel**, kooperatibei buruz hainbat gauza erakusteko arreta eskaintzeagatik;
**Nicola Foroni**, lan honetan bildu ditugun hainbat informazio eta baieztapen emateagatik eta Zeraingo egitasmoa erakusteagatik;
**Mikel Ozaita** eta bere ikaslagunak, Olatz Arozena, Donetz Iradi eta Aitzpea Lertxundi, Uztaro Kooperatibari buruz egindako azterketa-lana gure esku jartzeagatik;
**Mixel Berhokoirigoin**, zuen esperientziaren berri emateko hain harrera ona egiteagatik;
Nabarraldeko **Ana Telletxea** eta **Gurutz Zilbeti**, irudiekin laguntzeagatik

**Idoia**, darizun bizipoz-indarra guztioi lagungarri zaigulako; baita alde praktikoan ere, lan honetan izan ditugun arazo tekniko guztien konponbidea zure eskutik etorri baita;
**Silbi**, **Iñaki**, **Ana** eta **Mina**, amatasuna eta liburu honen eraketa uztartzen lagundu didazuelako: izeba-osaba ezin hobeak zarete! Zuri ere bai, Ekhine, Berako liburutegian laguntzeagatik!
**Arreko *auzoak*** (Apa, Lenci, Ikeriko, Aizea, Fermin… Alberto eta Arantxa): «Auzolanean posible dela» eta egunerokoan *auzo* harremanak zeinen garrantzitsuak diren erakusteagatik;

**Miren**, izeba zoragarria izateaz gainera, krisialdi guztietan ondoan sentitzen zaitudalako.
**Gurasoei**, naizen bezalakoa zuek egin nauzuelako, eta lan hau egiteko eta gainerakoetarako beti laguntzen nauzuelako; Eskerrik asko, bihotzez.
Azkenik, eskerrik asko **Igor** eta **Aia**, ondoan izateagatik. Igor, zure ekarpena berebizikoa izan da, ongi dakizunez.

Aia, zuretzat aipamen berezia, lan hau idazteko baliatu dugun denborak zuretzat izan behar baitzuen.
Irakurtzen duzunean, hala izatea merezi izan duela sentitzea nahi nuke.

Gu ez bagara, nor izanen da?
Orain ez bada, noiz izanen da?
Herriok ez bagara, nor izanen da?

*Giza garapena ez da automatikoa, eta ez da ezinbestean gertatzen. Orain eta hemen geroa iritsia dela onartu beharra daukagu. Orainaren larritasun gorriari erantzun behar diogu. Bizitzak eta historiak bere baitan duten igarkizunean beranduegi ibiltzeko arriskua daukagu. Denbora geldiarazteko eskatu dezakegu oihuka, etsipenak jota, baina denborak entzungor egingo digu eta ziztu bizian jarraituko du aurrera.*

Martin Luther King Jr.
*Hemendik aurrera, zer: kaosa ala komunitatea?*
Giza-garapenaren txostena 2007-2008
Nazio Batuen Erakundearen Garapenerako programa.

Auzolan pertsonen oinarrizko beharrizanak Garapen Komunitarioaren bidez asetzea helburu duen egitasmoa da. Gizarte eraldaketaren ikuspegitik abiatzen da, eta askapena lortu nahi du; askapena, norbanako, kolektibo, gizarte eta nazio gisa, Euskal Herrian.

Erreferentzia marko honen baitan, gisa honetako egitasmoak sustatu nahi dira: ekoizpen eta kontsumo ekologikoen kooperatibak, trukea, tokiko txanponak, energia buruaskitasuna lortzeko kooperatibak...

*Auzolanaren Kultura* liburu honek Euskal Herri osoan *Auzolan* taldeak sortzeko hazia izan nahi du, datorrenari –petrolioaren gailurrak, klima aldaketak eta ekologiaren

kolapsoak Kapitalismo Globala hondoratuko dute– aurre egin ahal izateko prestakuntzan lan eginen duen Herri Mugimendu bat antolatzeko asmoz.

Auzolan Elkartea sortu berri da, eta eskuartean duzun liburu hau izan da bere lehendabiziko ekimena. Auzolanaren jarduera ezagutarazteko beharra ikusi da, garai berri haue-tako erronkei aitzin egiteko baliagarria dela iritzita. Laster, www.auzolan.info gunean izanen da honen berri.

Auzolanaren jardueraren azalpenetik abiatuta, lan modu horrek adierazten duen sistema zabalago bati buruz mintzatzeko aukera ikusi dugu: *auzo* hitzaren adierak komunitate bizitza jakin baten berri ematen digu, historiko-ki *batzarrean* oinarritutako gizarte antolakuntza berezi bat eratu duena, berezko Zuzenbidean oinarritu –Pirinioetako/ Nafar Zuzenbidea– eta horren arabera bizi izan dena, herrialde gisa egituratu dena –Nafarroako Erresuma–, mun-du-ikuskera berezia sortu duena eta garai berriei egokitu zaiena.

Izan ere, auzolana ezin uler dezakegu auzoen arteko harremanak ezagutu gabe, auzolana indarrean izan den –eta, hein batean, oraindik ere baden– gizarte antolakuntza aipatu gabe eta auzolana ahalbidetu duen mundu-ikuskera edo pentsamolde berezia ulertzen saiatu gabe. Eta horiek guztiak aldatu edo gainbehera egin badute ere, bizi-bizirik ageri zaigu auzolana: antzinako itxuran kasu batzuetan, eta guztiz eraberrituta bertze gehienetan.

Eraberritzeko ahalmen hori ikusita, auzolanak aukera aunitz eskaintzen duela ohartu gara, eta hori hala ulertuta aurkezten dugu hemen, garai berri hauetako erronkei eran-tzuteko lanabes gisa.

Irakurketaz gozatzea espero dugu; batzuentzat interes-garriak diren zati batzuk bertzeentzat pisutsuak izan dai-tezke eta alderantziz... Horiek arinago irakurri eta pasarte atseginagoez gozatzea gomendatzen dugu. Eta gozagarri ez ezik, gogo-piztaile izatea ere nahi genuke.

## 1.
## AUZOLANA ETA ADIERAZTEN DUEN AUZOTASUN INSTITUZIOA

AUZOLANAREN GAIA LANTZERAKOAN, DATUEN BILAKETA sakon bat egitea interesgarria izanen litzatekeela uste dugu, hau da, Euskal Herri osoan dauden lekukotasunak zuzenean biltzea eta tokian tokiko artxiboak arakatzea. Horretarako genituen mugak direla eta, gure bilaketa azalekoa izan da, eta gehienbat bertze batzuek jaso eta jorratu dituzten datuekin osatutako lanak ekarri ditugu atal honetara. Horiek ezagutzerakoan, auzolanak lan egiteko modu bat baino aunitzez ere gehiago adierazten duela konturatu gara. Izan ere, auzolana bizitzeko modu jakin bati eta gizarte antolakuntza berezi bati lotzen zaie, *auzotasunaren* instituzioan oinarritzen direnak biak ere.

Antolakuntza horren ezaugarrien artean, honako hauek nabarmendu behar dira: herri mailako kontuak *Batzarra*ren bidez kudeatzen dira, komunitatearen zentzua berebizikoa da eta, oro har, gizarteak kohesio handia du. Horregatik, auzolanaren definizioa eta eskura genituen adibiderik adierazgarrienak jasotzeaz gainera, lan modu horrek adierazten duen sistema zabalago hori ere islatzen saiatu gara, guk *Auzolanaren Kultura* deitu duguna, hain zuzen ere.

Lan honen hurrengo ataletan azalduko dugu zein diren gizarte antolakuntza horren berezitasunak, gizarte hori osa-

tzen duten herritarren mundu ikuskera berezia eta gaur egungo euskal gizartean bizirik dirauten antolakuntza sistema horren ezaugarrien zantzuak. Izan ere, gaur egungo Euskal Herrian bizi-bizirik diraute elkartasunak, auto-antolakuntzarako gaitasunak eta gisako ezaugarriek:

Nazioarteko elkartasunean oinarritutako Gobernuz Kanpoko Erakundeen kopurua edo odol eta organo emaileena Europako handienak dira gurean, elkartasun horren adierazgarri; elkarlanerako eta antolakuntzarako gaitasuna ere agerian gelditzen da euskararen aldeko, presoei elkartasuna adierazteko edo bertzelako ekitaldien antolakuntzan, auzolan erraldoi gisa antolatzen diren horietan, eta ikastolak edo kooperatibak ere elkarlanean auto-antolatzeko joeraren –eta gaitasunaren– adierazle dira.

Ohiturazko auzolana gainbehera joan edo desagertu bada ere, bertze hamaika itxura hartuta, euskal gizarteko dinamika aunitzen oinarrian dakusagu *Auzolanaren Kultura*. Halaber, jada abian diren ekimenak indartu eta hedatzeko aukera dagoela ere ikusten dugu, baita ekimen berriak sortzekoa ere. Eskuartean dugun lan hau horretarako baliagarria izatea nahi genuke.

### 1.1. Zer da auzolana?

Auzolana –edo *auzalana*, Nafarroako toki aunitzetan– *auzo* eta *lan* hitzen elkarketa da, eta komunitate bateko kideen arteko elkarlana adierazten du. Herriaren –komunitatearen– alde musu-truk edo doan egiten den lana da; bertako kide izanik, herriari eskaintzen zaiona. Hagitz antzinakoa da lan egiteko modu hori, eta gaur egun bizirik dirauten antzinako kulturetan aurki ditzakegu auzolanaren baliokideak, bakoitza bere berezitasunekin, argi dago: Afrikako herri gehienetan, adibidez, komunitatean lan egiteko ohitura dute, eta txileko maputxeen komunitatean ere, bada gure auzolanaren baliokidea, *mingaco* erraten dio-

tena, hain zuzen ere. Antzinakoak diren eta gure egunetan antzinakotasunaren zantzuei eusten dieten herrietan kolektibitatearen zentzua barneratuta dago, eta horixe adierazten du, hain zuzen ere, auzolanak.

Euskal Herrian aurkitzen ditugun *herri-lurrak –komunalak–* lurra kolektibo gisa partekatzearen adierazpena dira: artzainek elkarrekin erabiltzen dituzte mendietako larreak, eta historian, denbora luzez, herri-lurrak jabetza pribatuari nagusitu izan zaizkio. Gaur egun herri-lur horiek gehienbat mendi goietako larreetan eta oihanetan badaude ere, XIX. mendeko bigarren zatira arte nekazari lurrek –eta, oro har, herrietako lur gehienek– erabilera kolektiboa izan dute. Lurra, ondasun nagusia, kolektiboarena izan da, eta hori hala izan dela jakiteak auzolanaren gisako jarduera kolektiboak ulertzen laguntzen digu.

*Auzolana* hitza aztertzerakoan, *auzo* hitzaren erranahia zehaztu beharrean gaude. Gaur egun, herrien banaketa-unitateak edo banaketa horietako bizilagunak izendatzeko erabiltzen bada ere, kontuan izan behar da XIX. mendearen bigarren zatira arte, *auzoa* edo *bezinoa* etxe-jabeari deitu izan zaiola, eta eskubideak nahiz betebeharrak dituen herritarra adierazi nahi duela. Euskal Herriko hainbat tokitan agertzen da, idazki historikoetan, *auzoaren* eta *bizilagun soilen* arteko ezberdintasuna. Azken horiek herrian bizi baina etxearen jabe ez zirenak lirateke, eta lehendabizikoak, berriz, herrian ez bizi izanda ere, bertan etxea zutenak.

Gizartearen antolakuntzan oinarrizkoa den figura zen, beraz, *auzoa*, eta Euskal Herriko ohiturazko gizartean hainbertzeko garrantzia izan duen *Etxea*ren ordezkari gisa uler dezakegu. Horrekin batean, kontuan hartzekoa da Euskal Herriaren berezko gizarte antolaketan auzokoak izan duen garrantzia, batzuetan senidetasun harremanei gailendu izan baitzaio. Hori aintzat hartuta, hobeki uler dezakegu jorratzen ari garen auzolana: *auzoek* osatutako komuni-

tateak bere betebeharrei erantzuteko izan duen modua da auzolana; horregatik, komunitate horren antolakuntza bereziaren ezaugarri gisa uler dezakegu, eta horretan datza bere garrantzia.

Herritarren parte-hartzean eta euren arteko elkartasunean oinarritutako antolakuntzaz mintzatzea zilegi zaigu, beraz. Nabarmentzekoa da auzolana ohiko jardunbidea den gizartean, norbanakoen arteko kohesioa –talde kohesioa– handia izan dela, bertzeak bertze, dantzaren bidez landu den talde kohesioa[1]. Gure egun hauetan, bakoitzak berea egiteko joera zertaraino heldu den jakinda, interesgarria iruditu zaigu gizartearen kohesioak eta norbanakoen arteko elkartasunak ezaugarritzen duen sistema hori. Aitzinerago zehaztuko ditugu gizarte antolakuntza berezi horren nondik norakoak; lehendabizi, auzolana zer izan den eta gaur egun zer den azalduko dugu.

Gure egunetaraino iritsi den auzolana komunitateak erregulatzen du –historikoki, haren kideek osatutako herrietako Batzarrak, eta geroago, udalak–. Ohiturazko lege gisa funtzionatu du Euskal Herri osoan, baina Nafarroan, adibidez, herri-administrazioei buruzko legediak ere jasotzen du, eta herrietako ordenantzen bidez arautzen da. Arabako hainbat herritan ere ordenantzek agintzen dute auzolanaren betebeharra. Kasu horietan derrigorrezko bihurtzen da, eta egin ezean, zigorrak edo isunak ezartzen dira.

Auzolanera deitutako egunetan ezin bada joan, ordezkoa bidali edo bertze moduren batean egin behar zaio

1. Hala jakinarazten digu Juan Antonio Urbeltz antropologo eta herri-kulturan adituak. Urbeltz dantzaria da, urte luzez Argia taldearen zuzendaria izana. Praktikan dantza lantzeaz gainera, bertzeak bertze, antzinako dantzak lehengoratzeko hainbat ikuskizun antolatu ditu bere emazte Marian Arregirekin batean; adierazgarriena, segur aski, *Axuri Beltza* izanen da. Horrez gain, hamaika lan argitaratu du dantza abiapuntutzat hartuz euskal kulturaren nondik norakoak azaltzeko.

ekarpena herriari. Herriarentzat musu-truk egiten diren lanak auzolantzat har daitezke, eta, beraz, hala egiten dutenek auzolan egunetan ez dute parte hartu beharrik izanen. Materiala, eta kasu batzuetan jan-edanak, Udalak jartzen ditu.

Herritar guztiek erabiltzen dituzten bideak eta bertzelako azpiegiturak konpontzeko egin izan dira –eta egiten dira– auzolanak. Horien artean, hainbat lekutan *handiak* eta *ttikiak* bereizi izan dira, lana egiteko beharrezkoak diren lanabesen arabera (aitzurrak, segak edo igitaiak behar izanez gero, *ttikiak* izanen lirateke, eta *handiak*, berriz, gurdiak, edo geroago, traktoreak, behar izanez gero).

Hainbat herritan, *mindegiak* zaindu eta bertan hazitako zuhaitzak mendian, herri-lurretan, landatzeko lana ere auzolanean egin izan da. Izan ere, oihana garrantzitsua izan da Euskal Herriko leku gehienetan: horiek ustiatzea izan da herri aunitzen ekonomia jarduera nagusietakoa (etxeetarako eta azpiegituretarako egurra ateratzeko eta ikatza egiteko, edo egurra saltzeko).

Urtean zehar hainbat auzolan egun zehazten dira: bi, lau, edo gehiago, eta bakoitzean zeregin jakin bat egiten da; horiez gainera, presazko auzolana ere deitu daiteke, ezbeharren bat gertatu eta zerbait konpontzeko beharra agertuz gero. Herriarentzat egindako lanaz gainera, auzoek elkar laguntzeko ere erabiltzen dute lan mota hori; hala nola, etxeren batean ezbeharren bat gertatzean edo langile kopuru handia eskatzen duten lanak egiteko.

Derrigorrezkotasuna aipatu dugu, garai batean, segur aski, Euskal Herriko leku guztietan herritarren betebehar gisa funtzionatzen baitzuen, baina kontuan hartzekoa da azken mendeetan aldatu egin dela auzolana: XIX. mendeko korronte liberalek berezko gizarte antolakuntzaren elementu nagusiak indargabe utzi zituzten, eta ondotik izan diren bertze hainbat aldaketaren ondorioz –bertzeak bertze, Industria Iraultzak ekarritako gizarte eredu berria– ohituraz-

ko auzolana gainbehera etorri da, eta derrigorrezkotasun hori desagertu egin da.

Hala ere, herri aunitzetan berreskuratu egin behar izan dute elkartuta lan egiteko modu hori, baina, kasu horietan, derrigorrezkoa izan beharrean, borondatezko gisa ageri zaigu. Dena dela, Nafarroan indarrean dagoen legediaren arabera, herri-administrazio guztiek dute aukera –udalek nahiz kontzejuek– ordenantza bidez herritarren eginbehar gisa auzolana ezartzeko.

Nabarmentzekoa da, herritarren betebehar gisa ezarrita egon denean, auzolanera ez joatea zigortu egin izan dela, eta isunak ezarri izan direla. Orain, aldiz, herritarrari aukera ematen zaio auzolanera joan beharrean ordainketa egiteko. Hala ere, erran dugunez, hainbat herritan –Lizarra aldean, adibidez– erabat borondatezkoa da deialdietara joatea.

*Auzolana, auzalana* (bertzeak bertze, Sakanan eta Tafallaldean), *artelana, orzalana* (Lizarra aldean) edo *aizelana* izenak aurki ditzakegu Euskal Herri osoan. Nafarroan, *auzolan* hitzaz gainera, *concejil* edo *prestación personal* ere –azken hori hagitz berria litzateke– agertzen dira dokumentu ofizialetan, eta Arabako zenbait tokitan *vereda* deitzen zaio auzolanari (Lizarra aldean ere, Arabatik hurbil dagoen eremuan, izen hori erabiltzen da).

Herri bakoitzeko jarduera nagusia artzaintza, nekazaritza, industria edo merkataritza izan, auzolana edonon erabili izan da, eta herriak era batera edo bertzera eraturik egonda ere, mendialdean zein behealdeko herrietan ere auzolana egin izan da. Hala erakusten du Bizkaiko edo Zuberoko mendialdeko herrixketan eta Nafarroako Erriberako herri handiagoetan sistema bera erabili izanak. Erriberako daturik apenas lortu badugu ere, 1900. urtean Murillo el Fruton kontzejuak zabaldutako udal-ohar edo *bando* batean ageri zaigu: Lursail berriak herritarren artean zozketatzeko egitasmoa zela-eta, zozketan parte hartu nahi zuen auzo bakoitzak

hemezortzi urtez gorako langile bat eremuak moldatzeko lanera bidaltzeko betebeharra ezarri zuen kontzejuak, aipatutako udal-oharraren bidez[2].

* * *

Galizan eta Asturiesen *andecha* izeneko sistema dago, eta Leonen, berriz, *hacendera*. Auzolanak bezala, garai bateko lan sistema dira, eta gaur egun gainbehera egin badute ere, oraindik ere zenbait lekutan bizirik diraute. Landa eremuetan indarrean dagoen jarduera da, eta auzolanean bezala, herritarrek herriko azpiegiturak moldatzeko egiten duten lana da. Etxeetako nekazaritza lanak auzoek elkarrekin egiten dituzte, edo herriarenak diren eraikinetan moldatze lanak ere *andecha*n egiten dira.

Herrian norbait lanerako ezinduta dagoenean ere, auzoek horiei laguntzeko *andecha* antolatzen dute. Astur Zuzenbidean jasotako instituzioa da *andecha*[3]. Kantauri aldeko lurraldeetan eta Gaztela eta Leon iparraldeko zenbaitetan *hacendera*[4] eta hainbat izen hartuagatik ere, funtsean sistema bera den lan moduak aurki ditzakegu. Zenbait kasutan, herritarrek erregeari edo jauntxoei egin beharreko ekarpenarekin nahasten dela ikusi ahal izan dugu, baina bilakaera hori aintzat hartzen dugun arren, jatorriz herri-

2. Datu hau *¡Vivan los comunes! Movimiento comunero y sucesos corraliceros en Navarra (1896-1930)* lanetik jaso dugu (Jose Miguel Gaston, Txalaparta, Tafalla, 2010), eta honela dio: *«[...] el 25 de noviembre de 1900, el alcalde dictaba un bando en el que comunicaba que al día siguiente comenzarían los trabajos para preparar las suertes que se habrían de repartir en los sotos del común. Cada día de los siguientes, serían llamados sesenta vecinos para que pusieran un peón de más de dieciocho años que acudiera al tajo. "Los vecinos –decía el bando- tienen la obligación de salir a trabajar de concejil el día que se les avise, pues de lo contrario perderían el derecho a la suerte"».*

3. *Andecha*ri buruz gehiago jakiteko, ikus honako lotura hau: http://es.wikipedia.org/wiki/Andecha

4. *Hacendera*ri buruz, berriz, honako hau: http://www.cuadrosleon.com/la_hacendera.thm

tarren borondatezko ekimena dela eta gaur egun bizirik dirauenetan ere hala dela ulertu behar dugu.

Pirinioen magalean kokatzen diren bertze herri batzuetan, Aragoin eta Andorran, erraterako, antzeko jarduerak egin izan dira, eta leku batzuetan oraindik ere egiten dira, bertze izen batzuk hartzen badituzte ere. Europan, berriz, Irlandan *coor* deitzen dioten auzolanaren gisako lan modu bat dagoela jakin ahal izan dugu. Europatik kanpo, hasieran aipatu bezala, Amerikako jatorrizko herrien *mingaco* edo *minka* jarduerak aurkitzen ditugu, eta Afrika ekialdeko *harambee*, bertze batzuen artean.

Gaur egun, garai batean izandakoarekin alderatuz gero toki gutxitan irauten badu ere, badirudi Euskal Herri gehienean sustraituta dagoen ideia dela auzolanarena; euren herrietan edo hirietan bizirik ezagutu ez badute ere, aunitz dira auzolanera jotzen duten gazteak, lan egiteko modu hori aldarrikatzen dutenak, eta ohikoa da gaztetxeetan edo gazte asanbladen jardueretan. Herrietako edo hainbat hiritako auzoetan bestak eta kultura ekitaldiak antolatzerakoan ere, elkarlanera jotzen da, eta auzolanean altxatzen dira beharrezko azpiegiturak, edo gisa horretan antolatzen dira zereginetarako lan txandak.

Herriarengan hain sustraituta izanik, herri-ekimenetan agertzeaz gainera, zeregin handiagoetara ere eramana izan da auzolana: Anoetan (Gipuzkoa) herritarrengan komunitate kontzientzia piztu nahi izan dute *Auzolan Kulturala* abiatuz; unibertsitateetako hainbat adituk edo gizarte gaietan lanean dabiltzanek auzolana eredutzat hartzen dute; elkarlanaren eta ingurumena zaintzearen aldeko balioak biltzen dituenez, hezkuntza sisteman txertatzeko proposamena ere egin da, eta, era berean, gure egungo gizartean hain hedatuta dauden Informazioaren eta Komunikazioaren Teknologietan ere, badira auzolanaren filosofia oinarri eta abiapuntu duten proiektuak eta tresnak.

Kasu horietan, auzolanaren praktika informatikoa komunitate birtualen antolaketan gauzatzen da. Ildo horre-

tan, azpimarragarriak dira, batez ere, Wikipediaren eta software librearen garapenean zentratzen diren komunitate birtualak.

Horiek guztiak aitzinerago izanen ditugu mintzagai. Lehendabizi, gure egunetaraino iraun duen ohiturazko auzolanaren nondik norakoen berri eman nahi dugu atal honetan.

### 1.2. Auzotasunaren garrantzia: «Auzo ona, adixkide ona»

Euskaldunon etnografiari buruzko lanetan ikasi ahal izan dugu *auzotasunak* izaera berezia eta berebiziko garrantzia izan dituela gure herrian. Etxearen baitan kokatzen da sendia, familia; *Etxea* –bere lurrekin eta ondasunekin– bereizi ezina da, eta haren biziraupena norbanakoaren interesen gainetik ezartzen da. «Suak» erraten zaie etxeei, (gaztelaniaz *foguera* edo *fogueral*), herrian bakoitzak egin beharreko ekarpenak zehazterakoan. Gizarteko harremanetan parte-hartzerakoan, *Etxea*ren ordezkaria izanen litzateke arestian aipatutako *auzoa* edo *bezinoa*; hala nola, herriko Batzarrean. Baina, aldi berean, etxe baten eta bertzearen arteko harremana ere biltzen du *auzo* izateak. Harreman horren garrantzia adierazterakoan, adierazgarriak dira Juan Carlos Etxegoienek *Orhipean* lanean bildutako erranairu zahar hauek:

> «*"Urrutiko parientia baino leenago da auzua"* (Gipuzkoa); *"Senidea baino auzoa beinago"* (Bizkaia); *"Auzo ona, adixkide ona"* (Nafarroa); *"Aizo hon dienak, begi lo hon"* eta *"Aizo hon dienak goiz hon"*[5] (Zuberoa), *"Barridea, aurridea"* (Nafarroa)...».

Komunitateak –herriak– eratzerakoan, senidetasunak baino auzotasunak garrantzia handiagoa izan zuela baiezta-

5. «Auzo on duenak, egin beza lo ona»; «Auzo on duenak, goiz on»; «Auzoa, senidea».

tzen da *Euskaldunak. Euskal Etnia* bilduman, Manuel Lekuonak *Euskal Institukizunak* atalean (bildumaren lehendabiziko liburukian[6]). Hala adierazten du, aipatutako iturriaren arabera, herri honen izaerak:

«Guretzat, aaidetasuna baiño leenago eta sakonago dago Euskalerriaren izaeran, beste gauza bat: «Auzo», auzotasuna. Auzotasunak elkartu ginduzan gu, gure Euskalerri hau poliki-poliki sortzeko; odolak baiño areago auzoak, aaidetasunak baino beiñago auzotasunak».

Atal honetan aipatu ditugun erranairuak, Gipuzkoari eta Bizkaiari dagozkienak, baieztapen horren adibidetzat aipatzen ditu Lekuonak.

«Etxeak berak bakarrik erantzun ezin dien arazoei egoki erantzun ahal izateko sortua da auzoa, eta etxeak bakarka osatu ezin dituen hutsune eta beharrak osatzen dituen neurrian indartzen da auzoa». Hala azaltzen du Gurutze Arregik *Auzoa*ri buruz lehentxeago aipatu dugun bilduman argitaratutako lanean (hirugarren liburukian). Arlo horiek ekonomikoak eta materialak izan daitezke, baina baita espiritualak ere, beherago ikusiko dugun bezala. Auzoen arteko harremana eta elkarlana ez dira noizbehinka gertatzen diren ekintzak; bizitza osoan eta belaunaldiz belaunaldi irauten dute.

Auzoa izatea «etxe batekoak bestekoen ondoan edo hurbil bizitzea bakarrik ez da; horretaz gainera, elkarrekin era bereziko hartu-emanak izatea da, antzinako ohituraren ohituraz egin-behar eta eskubide bihurtu diren hartu-emanak edukitzea», Gurutze Arregik Jose Migel Barandiaranen hitzak gogora ekarriz azaltzen duenez.

Ohiturazko araudiaren arabera ezartzen dira eginbeharrak eta eskubideak, eta geroago idatzita agertuko dira (Foruetan) urte aunitzez ahoz transmititu izan ziren aritzeko moduak; hala nola, auzolana bera. *Auzotasuna* instituzio

---

6. *Euskaldunak. Euskal Etnia* bildumak zazpi liburuki ditu.

gisa ageri zaigu, eta bere indarra ondasunak partekatzean datza, lurrak elkarrekin erabiltzean, adibidez. Herri-lur horien erabilera zehazteko, hainbat modutako elkargoak sortu izan dira: partzuergoak, patzeriak edo *elkarrekikoak*, kofradiak eta bertze hainbat.

Auzolana gehienbat bideak moldatzeko egiten zela erran dugu lehenago; auzolan horiek auzoka antolatzen ziren –auzo bakoitzekoak elkartu, eta euren eremuko bideak moldatzen zituzten–, eta auzolanerako deialdi horiez gain ere, egunerokoan ere auzo mailan –eta, beraz, auzoen elkarkidetzan– funtzionatzen zutela erran dezakegu: norbaitek etxea eraiki eta etxaldea osatu nahi izanez gero, auzoek ematen zituzten abereak, hainbat lehengai, baita eraikitzelanetarako laguntza ere; eguneroko lanetan edo lan jakinetan –artoa mihaurtzen edo sagarrak biltzen, adibidez–, besta edo erritu ekitaldietan eta, oro har, bizimoduaren arlo guztietan, auzoak elkarrekin aritzen ziren.

*Intervención y vínculo* (Kepa Fernandez de Larrinoaren edizioa) liburuan Mikel Errazkinen «Komunitate baten herrigintza. Anoetaren bilakaera gizarte tradizionaletik industrialera XX. mendean» lanean, halaxe azaltzen du egileak:

«Elkartze moduak herritarren arteko harremana zuen oinarri eta komunitate bateko partaide izatearen kontzientzia eta sentimendua zen elkarren artean elkartzera bultzatzen zituen arrazoi nagusia; harremanak onak edo txarrak izan, herritarrak behartuta zeuden. Bestetik, gizarte egituraketa horretan auzokoen figura oso garrantzitsua zen, guztiz eskubidedunak baitziren. Auzokoen berdintasun printzipioaren arabera zegoen eratua. Gaur egun arte mantendu den auzolana auzokoez osatutako gizarte antolamendu kolektibo haren aztarna izan daiteke; baita auzokoen berdintasun printzipioa ere, izan ere, auzolanerako deituak ziren eta elkartzen ziren auzokoak betebehar eta eskubide berak baitituzte».

Aunitz dira *auzoak* betetzen dituen eginkizunak. Hala nola, etxeren batean ezbeharren bat gertatuz gero,

auzoa izan da, ohituraz, lehendabizi ohartarazi izan dena. «Larritasun handiko gaixoaldietan, auzo hurrenak dei egingo die sendagileari, notarioari, apaizari e. a. Azken sakramentuak edo Elizakoak gaixoari ematerakoan, auzoak laguntzen dio apaizari», azaltzen du Arregik.

Auzoen arteko harremanen erakusgarri, hildakoaren etxean *gaubeila*[7] egiten zen, eta horietan, behin ere ez ziren falta izaten jan-edanak; «Garaian garaiko zenbait aitorpenek adierazten duenez, *gaubela* horiek ez ziren beti dolu eta samintasun girokoak. Hildakoaren aldeko otoitzak bai, baina baita bestelako hizketak eta jardurio bixiagoak ere egiten zituzten noski. Hildakoaren etxeko gaubelak direla eta, zenbait ateraldi jostagarri zabalduak dira ahoz-aho: horrek adierazten duenez, galdurik zioten heriotzari seriotasun giroa», Arregik jakinarazten duenez. Hori azaltzen du erranairu zahar honek: «Hil da gero, salda bero».

Heriotza-errituetan, hilkutxa etxetik elizara bizkarrean eramaten zutenak –Etxalarren jaso dugunez, «Difuntu bidea» erraten zitzaion– edota elizan hildakoari *argizaia* nahiz *olatak*[8] eskaintzearen arduradunak auzoak izaten ziren. Etxekoek, berriz, heriotza-errituei amaiera emateko, jan-edanera gonbidatzen zituzten senideak eta auzoak, elizaren hurbileko tabernaren batean. Ohitura horrek hein batean bizirik dirau zenbait herritan.

Jaiotzak zirela-eta, auzoko emakumeak jaioberriaren etxera joaten ziren, amari gozokiak eta haurrarentzako arropak ematera eta laguntzera. Euskal Herriko hainbat tokitan ohitura horrek *Andrakuste* eta antzeko izenak hartzen ditu. Zenbait lekutan, hamabortz egun iragan ondotik, ama berria

---

7. Gaubeila edo *gau-bilera*, Arregik Baztanen jaso zuenez.
8. *Argizaia, argizari bilduma* edo *argizaiola* egur baten inguruan bildutako argizari ziria da, heriotzetan kandela gisa erabiltzen dena. *Olata*, berriz, auzoek hildakoen omenez egiten zuten ogi berezia da, argizaiarekin batean elizan, hildakoaren etxeko hilobian, jartzen zena.

izaten zen auzoko emakumeak bildu eta otordua antolatzen zuena. Ezkontza-ospakizunetan auzoek elikagaiak emateko betebeharra zuten; hala nola, «anega laurden bat gari eta oilo bat», Arregiren lanean azaltzen denez.

Aipatu dugun *Euskaldunak* bilduman eta bertze etnografia-lanetan ere –*Nosotros, los Vascos* bildumako «Mitos, leyendas y costumbres» lanean Jose Duesok auzotasunari buruz idatzitakoan, adibidez– auzoek etxeko lanetan elkar laguntzeko zuten ohitura jasotzen da. Lan horiek batzuetan *ordeak* izaten ziren; hau da, batean etxe edo baserri batentzat lanak egiten ziren, eta hurrengoan bertzearentzat. Auzo bakoitzak bere lana eskaintzen zuen, ondotik ordainetan jasotzeko.

Landa ereiteko prestatzeko *laiaketa* –laiaz lurra puskatzea–, *igitaitea* edo *gari-ebatzea*[9], gari-jotzea, arto-zuriketa, *goruetan* –harigintzan– artilea lantzea eta bertze hainbat ziren lan horiek, guztiek ere jende kopuru handia eskatzen baitzuten. Aunitzetan, herri-lurrak erabiltzen ziren landak eta baratzeak egiteko, eta gari-jotzeko larrainak ere *komunalak* izaten ziren maiz. Arto-zuriketa eta artile-lantzea neguko gauetan egiten ziren, afalondoan, eta auzokoak elkartuta, solasaldi ederrak egiteko aukera izaten omen zuten. Ardimoztea, belar- eta iratze-garraioak (*belarketa* eta *iratzeketa*) eta *egurketa* ere *auzoek* elkarlanean egiten zituzten.

---

9. Igitaitea edo gari-ebatzea uzta ebakitzeari deritzo. Lehen igitaiarekin edo segarekin egiten zen, gerora makinen bidez, baina, hala ere, auzoak zeregin horretarako elkartzen segitzen zutela dio Arregik. Bere lana 1976an argitaratua da.



Auzoen arteko gaubeilak eta arto-xuriketa edo arto-mihaurtze lanak.

*Orde* horiez gainera, *behar orduetako lanak* deitu izan direnak ere egiten zituzten auzoek: etxeren batean umeak zituen alarguna edo adineko jendea bakarrik bizi izanez gero, edota ezbeharren bat gertatu eta etxeko lanak ezin eginik geldituz gero, auzoek beren gain hartzen zituzten lan horiek. Azken kasu horietan, ordainean deus ere espero gabe egiten zen lan, etxekoek jan-edanak ematen bazituzten ere. Lanaz gainera, hainbat kasu jakinetan, auzoen artean materialen ekarpena ere egiten zen.

Bizkaian *lorra* deitu izan zaio ekarpen modu horri, baina jarduera bera bertze hainbat herritan ere ohikoa izan da. *Zimaur lorra, bildots lorra* edo *zur lorra* agertzen dira Bizkaiko ohituretan: etxe batean berriki bizitzen jarriak izanez gero, edo bertzelako arrazoiengatik gai horien faltan zeudenean, *auzoen* artean bilketa egiten zuten. Auzo bakoitzak gorotz gurdikada bat ematen zuen, etxe horrek baratzerako edo belardietarako ongarria izan zezan. Artaldea osatu nahi izanez gero, auzo bakoitzak bildots eme bat ematen zuen. Egurra, berriz, ezbeharren baten ondorioz etxean hondatutakoak moldatzeko ematen zen. Kasu horietan, ohikoa zen jatekoa ere ematea, artoa edo garia, adibidez.

Arregi lurren izaera komunalari buruz ere mintzo da, horiek erabiltzeko *auzoa* izan behar dela azalduz:

«Giza-talde hauentzat oinarrizko bizibidea guztientzako auzo-lurrak izan dira. Lurra Euskalerrian hasieratik guztientzakoa izan da gehienbat, orain bertan aztarnak bizirik dauzkagunez. Ia oraintsu arte horrela iraun dute, gainera, landu gabeko lur sailik gehienek, hau da, goietako larreak eta mendiak. Herri lur edo auzo lur ziren sailetako gozamena, artzainentzat izan da. Baina gozamen hori izateko, auzotar edo herritar izan behar zuten bizitzez, eta halakotzat hartuak gainera»[10].

## 1.3. Auzolanean egindakoak

Auzolanen artean bideak konpontzeko, mantentzeko edo berritzeko lana nagusitzen da; Euskal Herri guzian hala da, antzinako denboretatik gaur den eguneraino. Auzoko etxeak elkarren artean, eta etxeak herrigunearekin nahiz herri-lurrekin lotzen dituzten bideak dira elkarlanean moldatzen direnak. Udalak edo Kontzejuak –tokian tokiko erakundearen arabera– jartzen ditu lan horretarako gaiak, eta lanabesak, berriz, gehienetan auzoek beraiek eramaten dituzte. Bizkaian *bidegintze* erraten zaie lan horiei; Goierrin *bide eittia* eta Enkarterrin *a caminos.* Araban auzolana errateko erabiltzen duten *vereda* ere bidegintzarekin lotuta dago. Aipatzekoa da bide bakoitzak, ohituraz, funtzio jakinak izan dituela, kasu batzuetan, behinik behin: hala erakusten dute *eliz-bideak*, *kurtzebideak* (gurutzebideak), *burdibideak* eta antzeko bertze izendapenek.

10. Auzo-lurren gozamena edo erabilera Nafarroako Udalerrien Administrazioaren Araudiak jasotzen zituela dio Arregik. Gaur egun araudi horren oinordeko den 6/1990 Foru Legeak auzo-lur edo herri-lur horiei buruzkoak zehazten ditu.

Ur-bideak, ur-askak, iturriak eta putzuak garbitzea, eta zubiak eta ur-biltegiak moldatzea ere, hainbat lekutan auzolanean egindako ohiko zereginak izaten ziren –edo izaten dira–. Mendiko artzain-etxolak moldatzea, artzainen arteko auzolanean egin izan da, irekiak izanik izaera komunala baitute.

Elizak eta baselizak eraikitzeko eta moldatzeko lanak ere auzolanean egin izan dira ohituraz. Eliza herrigunean dagoen eraikin publikoa dela erran daiteke; hau da, herri osoari zerbitzu egiten diona. Baselizak, ordea, Arregiren lanean agertzen denez, auzoarekin lotuta daude. Hark dioe– nez, herrialdeko auzune gehienek dute euren baseliza, gainerako eraikinen artean kokatzen dena. Horietako gehienen eraikitze-datak eta egileen izenak ez dira ezagutzen, baina antzina auzoetako parrokia gisa funtzionatu zutela uste da.

Herri-lurretan eraiki ohi zirela nabarmentzen du Arregik. Gogoan hartzekoa da baseliza aunitz –gehienak edo denak ez badira– kristautasuna ezarri aitzinetik bereziak edo «sakratuak» ziren tokietan eraiki zituztela, eta, beraz, erran liteke herritarrek euren lehenagoko erritu eta kultuekin segitzeko aukera izan zutela horietan. Gure egunetaraino iritsi da baselizekiko herritarrek erakusten duten ardura, eta auzoen esku segitzen du, kasu aunitzetan, horiek zaintzeko lanak.

Auzolanean egiten direnen artean maiz ageri zaigun lana herriko bestetarako karrikak txukuntzea da. Etxalarren (Bortziriak, Nafarroa iparraldean), ohituraz, urteko auzolanetako bat herriko besten aitzineko asteburuan egin izan da, eta 2010. urtean berreskuratu egin zen ohitura hori. Lizarra aldean, ia herri txiki guzietan antolatzen da bestetarako herria txukuntzeko auzolana.

### 1.3.1. Galdutako jarduera batzuk

Gaur den egunean erabat galduta dauden *kare-egitea* eta *gari-jotzea* auzolanean egiten ziren hainbat herritan. Kare-

labeak –*karobiak* edo *kisu labeak* deituak– kasu aunitzetan auzoenak izaten ziren, eta auzo-bideen bazterretan kokatzen ziren. Lurraren ongarritzat, abere-etxolak garbitzeko edo etxeen paretak xuritzeko hain erabilia zen karea egiteko, hainbat lagunen beharra izaten zen, eta horregatik, auzoek txandaka egiten zuten labearen zaintza.

*Ogia jo* –garia jo– eta alea lastotik bereizteko lanak larrainean egiten ziren. Hainbat lekutan etxe bakoitzak bere larraina izan zezakeen, baina auzo eta herri gehienetan, herri-lurretan kokatzen ziren, eta *eultze –gari-jotze–* lana auzoek elkarrekin egiten zuten. Larraina garbitu egin behar izaten zen erabili ahal izateko, eta batzuetan harrizko paretak inguratzen zuenez gero, hori ere konpondu beharra izaten zen; horiek ere auzolanean egiten ziren.

*Euskaldunak* bilduman jasotzen denez, galdutako bertze ohitura bat herriko bideetatik abereen gorotza biltzea zen, eta hori ere auzolanean egiten zen. Izan ere, karrikak garbitu bidenabar, gorotza ongarritarako erabiltzen zen. *Larreongarriya* deitzen omen zitzaion, Jose Mari Satrustegik Urdiainen (Sakana) jasotakoaren arabera, eta enkantean saltzen zen.

Herri-lurretan oihanak osatzeko lana ere auzolanean egin izan da. Ia auzo guztietan –herria banatzen zen eremu bakoitzean– izaten ziren *mindegiak*; hau da, zuhaitzen haziak ereiteko eremu bereziak, mendietako xokorik onenetan kokatuak (gaztelaniaz *vivero* erraten zaie). Harrizko harresiz inguratzen ziren, abereak eta bertzelako animaliak ez sartzeko, eta egoera onean zaintzeko, auzo guztiak elkarlanean aritzen ziren.

Urtean behin mindegiko landareak mendian landatzen ziren, herri-lurretan, bi-hiru metrokoak egiten zirenean. Hala jaso dugu Etxalarren. Duela zenbait urte herri horretan urtean bi auzolan egiten ziren: udaberrian bideak konpondu eta antzeko lanak egiten zituzten, eta negu aldera, berriz, *mindegikoak.* Gaztaina, *bagoa* eta haritza landatzen ziren, gehienbat.

Bizkaian *landara imintzea* deitu zaio lan horri, eta pagoak, arteak eta *aretxak* landatzen ziren. Herrialde horretan, *kofradiek* kudeatzen zituzten, kofradia auzo-elkargo modua baita. Arratia haranean, adibidez, joan den mendearen hasieran desagertu zen jardunbide hori, herri-lurrak auzoen artean banatu eta jabego pribatua izatera iragan zirenean.

### 1.3.2. Auzuneko eskolak Bizkaian

Auzuneko eskolak ere auzolanean eginak izaten dira. Bizkaian aurkitzen ditugu Auzuneko eskolak, 1920an Bizkaiko Aldundiak hartutako erabakiarekin eraiki zirenak. Luis Elizalde eta Eduardo Landeta euskaltzaleek eman zuten eskola horiek sortzeko ideia, garai hartan euskal ikastetxeak sortzeko abian zen prozesuaren barruan. Eskola horiek baserri-auzoetan eraiki ziren, herriguneetan zeuden eskoletara joateko arazoak zituzten haurrentzat. Tokian tokiko bizilagunek eraiki zituzten, eta kasu batzuetan materiala ere eurek jarri zuten. Euskaraz zekiten irakasleak aritzen ziren horietan, eta izaera autonomoa zuten.

Hala ere, urteak joan ahala, hasierako helburuak aldatu egin ziren, eta 1931. urtean Eusko Ikaskuntzak salatu zuenez, eskola horiek, euskara zaintzeko izan beharrean, hizkuntza hori desagerrarazteko tresna bilakatu ziren. Ez dakigu zehazki zer gertatu zen bilakaera hori izateko. Egoera horrek okerrera egin zuen 1936ko altxamenduarekin: handik aitzinera auzuneko eskolak Madrilgo Gobernuaren eskuetara iragan ziren, eta debekatu egin zuten horietan euskara erabiltzea. Baserri auzoen eta herriguneen arteko komunikabideak hobetu ahala, eskola horiek gainbehera egin zuten. Hala azaltzen du Gurutze Arregik gorago aipatutako bere lanean.

### 1.3.3. Otsoen eta oti intsektuen aurka egiteko auzolanak

Tafallaren historiari gainbegiratu bat ematerakoan, hiri horretan otsoei eta landak hondatzen zituen oti intsektuen izurriari (gaztelaniaz, *plaga de langosta*) aurre egiteko *auzalanak* maiz antolatzen zirela ikusi dugu. Ohiko auzolanen artean halakorik aurkitzen ez denez, horiek aipatzea merezi duela uste dugu.

Jose Mari Esparzaren *Tafallaren Historia* lanean agertzen denez, 1414ko apirilean otsoak eta azeriak harrapatzeko *auzalanerako* deialdia egin zuten. Arazoari aurre egiteko herritarren arteko elkarlana eskatzen bazuen, animalia horien kopurua handia zela pentsatzekoa da. 1505eko ekainean Kontzejuak gisa guztietako jendea bildu, eta Erriberri eta Tafalla arteko eremuan otsoak eta otso-kumeak hiltzera joateko agindua eman zuen. 1507an ez omen zen otsoak hiltzeko *auzalanik* antolatu, Kontzejuak horretan ibiltzen zen Aragoiko gizon bat ordaintzeko asmoa baitzuen. 1590ean, berriz ere *auzalanera* deitu zen, inguruko herrietakoekin batean otsoak hiltzera joateko. Ohikoa omen zen zeregin horretarako hainbat herri elkartzea.

Oti intsektuaren izurria arazo benetan larritzat agertzen da aipatutako lanean. 1500. urteko abenduan, prozesioa antolatu zen intsektu horiekin amaitzeko, baina, ageri denez, hori ez zen nahikoa izan, eta herri guzia *auzalanean* atera zen izurriari aurre egitera. Hurrengo hilabetean berriz ere Kontzejuak etxe bakoitzeko herritar bat izurriari aurre egitera ateratzeko agindu zuen. Hilabete batzuk geroago, etxe bakoitzetik bi edo hiru lagun ateratzeko eskatu zen. Urte bereko azaroan arazoak bere horretan zirauen, eta hamar herritarreko talde bakoitzetik bat lan horretara ateratzeko eskatu zuen Kontzejuak.

1501eko apirilean idatzitako agirian, maindire eta mantekin oti intsektuaren aurka joateko agindua agertzen da, oihal gehiagoren bila Iruñera joan behar dutela gaineratuz. 1687ko uztailean, izurriaren aurka mezak eta prozesioak

antolatzen segitzen zuten, *auzalanak* ez baitziren aski. Bi urte geroago, prozesioak eta *auzalanak* egiten segitzen bazuten ere, izurri berri bat sortu zela jakinarazten da.

Bertze herri batzuetan ere kalteak eragiten zituzten hainbat animalia akabatzeko auzolanak egiten omen ziren; Berueten (Basaburua Ibarra, Nafarroa) satorrak eta azeriak akabatzeko egin izan direla jaso dugu. Han ordaindu egiten zen auzolan egun bakoitza, eta animalia horietako bakoitzarengatik ere ordainsaria ematen zen. Horretarako, harrapatutako animalien buztanak aurkeztu behar ziren.

Ordaindutako auzolanaren bertze adibide bat Etxarri Aranatzi buruzko testu batean aurkitu dugu. *La Nueva Covadonga Insurgente. Orígenes sociales y culturales de la sublevación de 1936 en Navarra y el País Vasco* (Javier Ugarte Telleria, 1998) lanean 1936ko gerra sortu zenean Etxarri Aranatzen zegoen egoera agertzen da, bertze aunitzen artean, eta garai hartan bertan auzolanak nola funtzionatzen zuen azaltzen da: etxe bakoitzari urtean sei lanegun zegozkion, horietako bi idi-pareak lagunduta.

Aldi bakoitzean sei-zortzi laguneko talde txikiak aritzen ziren, eta ezkilak joz deitzen zen auzolanera. Auzolana egitearen saria egur-lotea eta abereen azpiendako orbela izaten ziren. Egun osorako ateratzen ziren, eta *juerga* izaten omen zen. Herri osoak egiten zuen auzolana, gaztetxoenetatik hasi eta adinekoetaraino. Zuhaitz landaketak egitea edota idien laguntzaz bideak eta errekak garbitzea izaten zen. Auzolan egun bakoitzarengatik bi pezeta ordaintzen omen zen, eta horretarako erabilitako idi-pare bakoitzarengatik, lau pezeta.

Auzolana herriaren alde doan egiten den lana den arren, hainbat herritan une jakin batzuetan ordaindu egiten zela jaso dugu. Dirudienez, herritarren ekonomia ahula laguntzeko egin izan dira ordainketak. Herriak jan-edanak eskaini izan ditu, lehenago aipatu dugunez; Etxalarren, adibidez, sagardoa eta ogia banatzen omen ziren auzolanean aritutakoen artean.

Atal hau amaitzeko, auzolana musikaz lagundu izan den kasu baten berri emanen dugu. Juan Antonio Urbeltzen *Bailar el Caos* liburuan jaso dugun datua da, eta hala dio: Oiartzunen, XVIII. mendearen erdialdean pilotalekua moldatzeko lanean auzolanean omen zebiltzan, eta zeregin horretan musikak lagunduta ari omen ziren. Ez dugu antzeko kasu gehiagorik jaso, baina Urbeltzek ulertzera ematen duenez, ez litzateke harritzekoa izanen garai batean hainbat zereginetarako musikaren laguntza erabili izana; erritmo jakin bati segituz eta musikak ematen duen harmonia lagun, lan egiteko modua eraginkorragoa dela baiezta dezakegu.

### 1.4. Bazkunak, auzo-elkargoak

«Euskal Herri osoan barna begiratuta, auzoan aurkitzen dugu gizarte eta politika antolaketaren lehenengo egitura, eta bera zeharo ohiturazkoa da. Eta hau neurriz handi eta zabal diren udaletan ageri da batez ere. Oinarrizko gizarte erakunde hauek izen ezberdinak dituzte Euskalerrian zehar, ondoren ageri denez: Kofradiak (Bizkaia), Kontzejuak (Bizkaiko Enkarterrietan, Nafarroan...), Zendeak (Nafarroa), Sindikatuak edo Mendiko parrokiak (Zuberoa)».

Hala azaltzen da *Euskaldunak. Euskal etnia* bilduman. «Izen eta axaleko itxura ezberdinak badituzte ere, barru izakeraz berdinak dira», eta guztien eginkizuna ohiturazko arauen arabera herri-ondasunak auzoen artean kudeatzea da. Kasu aunitzetan arau horiek ordenantzetan jasoak izan dira, eta administrazio-izaera dute: bilerak eta deialdiak egiten dira, kontu-liburuak erabiltzen dira eta batzordeak osatzen.

Bizkaian *kofradiak* arduratzen ziren *landara imintzeaz*, baselizen kudeaketaz, egurra, iratzea eta *orbela* (lurrera eroritako hostoa) banatzeaz edo bidegintzaz. *Basalkatea, basazaina* eta *maiordomoa* karguak hautatzen ziren, kofradiaren funtzioak betetzeko arduradun gisa. Euskal Herriko bertze

leku batzuetan kofradiak eliza kontuekin lotzen dira, baina betiere auzoen elkargo gisa funtzionatzen dute. Hala gertatzen da Nafarroan (Etxalar, Ezkabarte, Tafalla...) eta Arabako mendialdean (Arana ibarra...).

*Kontzejuak* Enkarterrin «parrokia bereko auzoek beren intereseko gaiak jorratzeko eliz-atarian egiten dituzten bilerak» direla jakinarazten du Vicario y de la Peñak, Euskaldunak bilduman jasotzen denez. Nafarroako *kontzeju irekiak* –batzarrak–, berriz, egun indarrean daude oraindik –euren gaitasunak gainbehera egin badu ere– eta «antolaketa oso berezi eta bitxia duen erakundea da, Udalerri txiki baten antzekoa. Bere eginkizunak, auzoko-ondasunen ardura eramatea batetik, auzoaren eta goragoko erakundeen artean bitartekotza egitea bestetik, dira», Arregik bere lanean zehazten duenez. «Udalaren lehenengo oinarria da kontzejua, eta, Udalaren barruko zati delarik ere, Udaletik bereiz ere bere kontura jokatzen du», egileak gaineratzen duenez.

Nafarroan bertzelako egiturak ere aurkitzen dira, hala nola *quiñones* Zaraitzun, *kuartelak* Baztanen, *arrabal* deitutako auzoak eta *zendeak* Artaxoan eta Larragan. Azken horiek ibar gisa edo herrien arteko elkarketa-sistematzat hartu izan badira ere, antzinako auzo-elkargoak izanen lirateke, Jose Maria Jimeno Jurioren arabera: «Euskaldunen artean *zenteak* omen ziren lehen eta *centena* gaztelarren artean; eta izatez, ez Haran eta ez Udal, zenbaitek esan duenez; haran eta unibertsitateen zati bat izan da, betiere eginkizun zehatzak dituena», Arregik artaxoarraren hitzak gogoratuz dioenez. Artaxoan zendea bakoitza Kontzejuan ordezkatua izaten omen zen, eta auzokoen artean aukeratutako zinegotzi hori arduratzen zen auzolanak deitzeaz, horiek ikuskatzeaz eta zigorrak ezartzeaz.

Auzoen arteko bertze elkargo mota bat elkar babesteko osatutako *ermandadeak* lirateke. Abeltzainen arteko ermandadeak dira ezagunenak. Aseguru-entitate moduan funtzionatu izan dute: Auzoren bati ezbeharra gertatu eta

abereak gaixotu edo hilez gero, gainerako kideek dirutan ordaintzen dute kaltea. Nafarroan eta Araban helburu bera dute hainbat lekutan osatutako *kofradiek*, baina kasu horietan hileta-kostuei aurre egitea da euren funtzioa.

*Etxe erreen* ermandade edo batzordeak ere aurki ditzakegu, egun kasu batzuetan indarrean daudenak, etxeak erretzean izandako galerei erantzuteko asmoz. Anoetan (Tolosaldea, Gipuzkoa) badela jakin ahal izan dugu, baita Etxalarren ere (Bortziriak, Nafarroa). Pello Apezetxearen *Etxalarren historiako zenbait jakingarri lanean* ageri denez, 1828. urteko akta batek honela dio:

«Oroitezinezko ohitura da, laudagarria gainera, etxeren bat erretzen denean luzatzen zaion laguntza: teila ematen zaio, garraio-lanetan dohainik laguntzen zaio, eta hargin eta zurginek ere egun batzuz kobratu gabe lan egiten dute. Horrela zoritxarra jasandakoek hats hartzen dute, eta denentzat da mesedegarri, herria manten dadin».

Udalak etxe horiek berreraikitzeko egurra eman ohi zuen. Geroago, 1891 urtean, Sute Elkartea sortu zen herri horretan, egun indarrean dagoena; kide diren etxeek, suteak itzaltzera joateko edo horiek eragindako kalteei aitzin egiteko kideen laguntza jaso zezaten eratu zen. Egun suteak izaten badira ere, garai batean horiek gertatzeko arriskua handiagoa zen: etxeetako azpiegiturak egurrezkoak izatea, belar idorra eta gisako gaiak etxe barnean gordetzea edo argia egiteko sua erabiltzea dira horren arrazoi nagusiak.



Etxe bat erretzen zenean, auzoek laguntzen zituzten kaltetutakoak.

Bertzelako elkargoekin segituz, Nafarroa Beherean eta Zuberoan artzainen arteko antzinako elkargoak aurki ditzakegu, *partzuerrak* deituak. Arregik bere lanean dioenez, ardiak mendiko larreetara igotzerakoan sortutako lanak partekatzen zituzten: denen artean igotzen bazituzten ere, goian geratzen zirenak lau izaten ziren, ardiak jezteko bi, eta bertze bi etxolako lanak egiteko. Txandaka aldatzen joaten ziren bakoitzaren zereginak.

*Txotx* deitzen zaio artzain bakoitzak zaindutako artaldeari, eta hirurogei buruko unitatea izan ohi da. Gaur egun antzinako sistema horren zantzuak aurki ditzakegu, Zuberoan, batez ere, artzainak, hiru-lau laguneko taldeak osatuta, elkarrekin aritzen baitira mendiko eta etxolako lanetan.

Amaitzeko, aipatu behar dugu herrien artean izandako elkarkidetza ere. Herriek entitate autonomo gisa funtzionatu izan dute, gaur egun baino autonomia maila handiagoa baitzuten, beharrizanak herrian bertan ase ahal izateko buruaskitasunak eta goi-erakundeekiko harremanak noizbehinkakoak bakarrik izateak erakusten digutenez. Baina herrien arteko elkartasuna garrantzitsua zela ageri zaigu: lapurren edo otsoen aurka egiteko, sarritan egiten zen eskualdeko hainbat herriren arteko elkarlana, eta herri horietako ordezkariek urtean zehar bilera aunitz egiten zituzten; Etxalarri dagokionez, Bortzirietako eta inguruko herrietako ordezkariekin egiten zituzten bilerak; XVI. eta XIX. mendeetan, urtean hamar izan ziren, banaz bertze.

Larrialdi handiko uneetan bilera gehiago egiten ziren, hala nola, gerra denboretan. Gaur ere antzeman dezakegu herrien elkarkidetzarako nolabaiteko joera: Bortzirietan euskararen aldeko, zaborrak kudeatzeko eta Gizarte Zerbitzuak eskaintzeko mankomunitateak daude, Euskal Herri osoan badiren bezala.

# 2.
## ARTZAIN-MUNDUTIK, KOMUNIKAZIOEN ARORA

ATAL HONEN IZENBURUA AUKERATZERAKOAN, aintzat hartu dugu euskal gizartea artzain munduarekin lotzen duen topikoan erortzeko arriskua genuela, baina auzolanak Euskal Herriaren historian izan dituen garapena eta bilakaera adierazi nahi izan ditugunez, Neolito garaiko lehendabiziko komunitateen sorrerarekin lotzen dugun «Artzain-mundua» eta egungo gizarte-eredua izendatzeko erabiltzen den «Komunikazioen edo Informazioaren Aroa» izendapenak aukeratu ditugu.

Auzolana garai batean erabat zabalduta zegoen jarduera izan dela erran dugu, eta hala izan da berriki arte. Hala ere, azken hamarkadetan ohiturazko auzolanak gainbehera egin du: bertzeak bertze, ekoizpen modu berriak ezarri eta bizimodu-eredua erabat aldatu denez, ohiturazko auzolana ia desagertzear egon da. Hainbat herri txikitan bizirik iraun du; bertze leku aunitzetan berreskuratu egin nahi izan dute –edo behar izan dute–, eta Euskal Herri gehienean, itxura hagitz ezberdinak hartu ditu. Dena dela, bizi-bizirik dirauen sistema eta balioa da auzolanarena. Beraz, izenburu honekin, ohiturazko auzolanak «Komunikazioen Aroa» deitzen zaion gure egun hauetara iristeko bidean ezagututako eraldaketen berri eman nahi dugu.

Ohiturazko auzolanak 1960ko hamarkadatik aitzinera gainbehera egin du ia erabat, orduan zabaldutako industrializazio- eta urbanizazio-prozesuak bertzelako gizarte-eredua ekarri baitu. Hau erraterakoan, honakoa ohartarazi behar dugu: gure herrian data horretatik aitzinera ezarritako industrializazio berriari buruz ari gara; izan ere, ez da zuzena ordura arte industriarik gabeko herria izan garela pentsaraztea. Industriak Euskal Herriaren historian garrantzi handia izan du; Burdin Aroko lehendabiziko meatze eta burdinolen jarduueretatik hasi, eta azken hamarkadetako industriagintza berriraino.

Beraz, euskaldunena, artzain, nekazari eta arrantzale herria izateaz gainera, industria herria ere izan dela baiezta dezakegu, eta baita merkatari herria ere; Erdi Aroan, batez ere, loratu zen merkataritza Europarekin izan diren salerosketa-harreman oparoek ezaugarritzen dute, eta horren erakusle dira Iruñea, Gasteiz eta Lizarra hiriak, bere garaian merkataritza gune garrantzitsuak izanak[11].

Eta industria-jarduera nagusia izan den herrietan ere auzolana indarrean egon da; Arrasaten eta Eibarren, adibidez, sistema horrek berdin funtzionatu duela erran beharrean gaude.

Hori horrela izan zen, industrializazioak euskal gizartea erabat aldatu zuen arte. Antzinako garaietatik ordura arte auzo-komunitateak izandako indarrak gainbehera egin zuen, eta horrekin batean, auzolanak ere bai. Industrializazio berriak eragindako urbanizazio masiboarekin, hautsi egin ziren ohiturazko gizarte-antolakuntza komunitarioan, auzokomunitatean, estuak ziren harremanak, eta ordura arteko talde kohesio handiari ere eragin zion.

11. Europarekin ohituraz izandako merkataritza-harreman horiek ia erabat eten ziren 1820ko hamarkadan Madrilgo agintariek aduanak Ebrotik Pirinioetara lekualdatu zituztenean, eta ordura arte ekonomia-jarduera oparoa zena galdu egin zen, Mikel Soraurenek bere *La Historia de Navarra, el Estado vasco* lanean dioenez.

Bidenabar, erran behar dugu, historikoki herrietako bizimoduaren alde guztiak erabaki eta kudeatu izan dituen *Batzarra* erakundearen eskumena murriztuz joan dela Estatuek (frantziar eta espainiar Estatuei buruz ari gara) boterea bereganatu ahala, eta herriko kontuak herrian moldatzetik, zentralizatutako botere guneen menpe gelditzera iragateak ere ondorio sakonak izan dituela. Hainbat alditan gauzatzen joan den egitatea da, baina oro har erran dezakegunez, XVIII.-XIX. mendeetan gertatu zen bilakaera hori. Batzarrari eta jatorrizko euskal erakundeei buruzko azalpena hurrengo atalean emanen badugu ere, komenigarria iruditu zaigu egitate hau orain aipatzea, ezinbertzekoa baita hemen azaltzen ditugun bilakaerak ulertzeko.

Atal honetan bilakaera horren berri ematen da, eta horren ondorioz ahulduta edo desagertuta gelditu diren zenbait balio aurkezten dira. Ez da liburu honetarako egindako hausnarketa, gai hori landu duten hainbat egilek errandakoa jasotzen baitugu atal honetan.

Hala ere, auzolana hain antzinakoa den jarduera izanagatik, gaur egun mantentzen dela nabarmendu nahi izan dugu: Anoetako *Auzolan kulturala* da lan modu horren garrantzia azpimarratu eta gure gaur egungo gizartean nola txertatu hobekien azaltzen digun adibidea. Herri horretan, industria-lantegiak agertzearekin batean, ordura arte nekazaria eta abeltzaina izandako komunitatea erabat aldatu zen, eta herritarren arteko harreman berriak antzinako balio batzuk berreskuratuz jorratzeko asmoz abiatu zen ekimena, Auzolan Kulturala deitua. Adibide horrek baieztatzen digu auzolanak zer toki izan dezakeen «Komunikazioen aroa» deitu dugun egungo eredu globalizatu honetan.

## 2.1. Auzolanaren gizartearen bilakaera

«Auzolanaren gizartea» ohiturazko auzolana indarrean izan den gizarte-eredua izendatzeko erabili dugu. Auzolana

aztergai dugun honetan, garrantzitsua iruditzen zaigu jarduera hau oinarrizko sistematzat zuen gizarte-ereduak izan duen bilakaeraren nondik norakoen berri ematea, hori ulertzeko argi-izpiak aurkeztea.

Auzolana eta berau indarrean egon den gizarte-antolakuntza berezia denboran kokatzen saiatuko gara, gizarte horren jarduera nagusien eta balioen azalpen bat eskainiz, 1960ko hamarkadan jarri dugun mugarria ikustarazte aldera. Erran bezala, jarduera sozio-ekonomikoari eta balioak biltzen dituen pentsamoldeari buruz mintzatuko gara, egitura politikoa aipatuko badugu ere, hori hurrengo atalean sakonduko dugun gaia izanen baita.

Data batzuk finkatze aldera, Neolito garaiari buruzko sarrera xume bat eginen dugu. Garai hartan agertzen dira gaur egun oinarrizko jarduera ekonomikoak direnak; hau da, abeltzaintza eta nekazaritza, edo lehendabiziko industriak, burdinoletan oinarrituak. Garai hartan eratu ziren, halaber, lehendabiziko herrixkak, eta, beraz, gure gizartearen lurralde-antolakuntza orduan hasi zela erran dezakegu.

Neolitiko garaia, Euskal Herrian, K.a. 5.000 urte inguruan kokatzen da, eta Neolito aurreratua deritzonean finkatu izan da artzaintzaren agerpena (K.a. 4.000tik 3.300era). Nekazaritzari dagokionez, jarduera horren ikerkuntzak zailtasun handiagoak ditu, laboreen arrastoak ikertzea zailagoa baita –eta zer erranik ez barazkienak–. Hala ere, azken urteetan aurkikuntza garrantzitsuak agertzen ari dira, eta Lidia Zapata EHUko arkeologoa da ildo horretan nabarmentzen den eragilea. Orain arte uste izandakoa baino antzinakoagoa da Euskal Herrian nekazaritzaren jarduera, artzaintzaren agerpenarentzat finkatu dugun garaia baino antzinagoko garagar aleen arrastoak aurkitu baitira[12].

12. Zehazki, K.a. 4.500 urtean kokatutako garagar aleak aurkitu dira Kobaederrako indusketetan (Kortezubi, Bizkaia). Neolito garaian garagarra eta ezkandia (gari